# Arratiako Eliza

**Ebanjelioaren ikasle misiolariak** (EP 120)

**Plangintza 2016/2019**



**Arratiako Kristau Elkartearen hausnarketa**

**norabidea eta lehentasunak**

**Zulaibar, 2015-10-24**

## Dokumentuaren edukia:

**Hausnarketa prozesuaz** ........................................................ **3**

**I. Plana 2016-2019: Lehentasunak** ..................................... **5**

**II. Gure indargune eta hobekuntza arloak** ............................. **8**

**II a -** Partaideek, gogoeta hasi aurretik, Elizarekiko dituzten kezka batzuk agertu dituzte .................................... **8**

**II b –** 2011-2015 Planaz gogoeta ...................................... **9**

**II c –** 2016-2019 Planaz gogoeta berriak ............................ **15**

## HAUSNARKETA PROZESUAZ

### Helburua

Arratiako Elizaren gaur egungo egoeraz erreflexioa burutu eta norabidea ezartzea izan da helburua, hurrengo 4 urteko pastoral ziklorako helburuak eta plangintza zehaztuz.

Bigarren hausnarketa ekitaldia da. Honen aurrekoa 2011-11-26an egin zen eta bertan 2012-2015 plana egin zen.

Hausnarketa taldearen bidez bideratzea Arratiako parrokoen ardura izan da, Roberto Juaregibeita eta Jose Mari Kortazar abadeena.

### Partaideak

Arratiako kristau komunitatean ardura eta dinamizazio lanean diharduen partaide batzuk osatu dute hausnarketa taldea, partaideak honako hauek izanik.

Parrokietako ordezkariak:

- Niko Etxebarria (Areatza)
- Maria Jesus Soto, ADAPeko ospatzaile (Areatza)
- Karmen Ibarra, ADAPeko ospatzaile (Dima)
- Mari Carmen Petralanda, Korukidea (Dima)
- Luis Carlos Abeal, Pastoraltza-Liturgia (Bedia)
- Olatz Urkiza, Liturgia (Igorre)
- Itziar Etxebarria, APK kidea (Igorre)
- Jose Inazio Ortuzar, Liturgia (Artea)
- Eusebio Ozerinjauregi, Liturgia (Zeanuri)
- Jesus Esparta, Korukidea eta PK kidea (Zeanuri)

Komisioak

- Cristina Zubero (Caritas Arratia)
- Begoña Aristondo (Familia pastoraltza Arratia)
- Irene Uriarte (Liturgia Arratia)

Kolaborazioa

- Jaime Artetxe (Zulaibar lanbide ikastegia eta idazkaria)

Abadeak

- Roberto Jauregibeitia
- Jose Mari Kortazar

Ezin izan dira batzarrean izan

- Amaia Etxezarraga (Arantzazu)
- Cristina Barroeta Familia Pastoraltza (Lemoa)

Laguntzailea:

- Andoni Aranburu

## Metodologia

2. hausnarketa lana prozesu marko baten barruan diseinatu da, modu bat pentsatu da eliztar laikoen partaidetza jasotzeko, modu bat pentsamendu anitzak bateratzeko eta planifikazioa egiteko eta modu bat, baita ere, ekintza plana garatzeko.

Eskema ondoko diagrama honetan ikus daiteke:

Abiapuntu modura 2012-2015 Lehen Plana erabili da.



# 2016-2019 PLANA

# LEHENTASUNAK (5 + 1)

| Lehentasunak | | Arduradunak |
| --- | --- | --- |
| 1 | Arratiako Kristau Elkarteak **gaztetxo eta nerabeak** kristau elkartera hurbildu behar ditugu, gure artean toki propioa izan behar dute.<br><br>Lehen jaunartzea egin ondoren gazteek kristau elkartean jarraitzeko dinamika berriak sortu behar ditugu eta egokia litzateke urte batzuetara proiektu konkretuak finkatzea: Eskaut proiektua izan liteke adibide bat.<br><br>Saiakera 10-18 urte tartekoekin aurreikusten dugu. | Roberto Jauregibeitia |
| | ⇕ *Gazte eta nerabeekin daukagun lehentasun hau bigarren lehentasunarekin txertatu beharko genuke: kristau katekesiara dakarten guraso gazteekin formazio-konpromiso dinamikak ere jarri behar ditugu.* | |
| 2 | **Familia pastoraltzan** pausu berri bat eman beharra ikusi dugu: mezak eta gehiago!<br><br>Familia mezak herri gehienetan duintasunez ospatzen ditugu prozesu baten emaitzak dira. Haurrekin egiten den lana mantendu egingo dugu; halere gurasoekin dinamika berriak hasi behar ditugu.<br><br>Horretarako, batez ere guraso gazteekin, dinamika berriak martxan jartzeko eskaintza berriaren planifikazioa egin behar dugu. Eskaintza berriaz bost galdera ZERTARAKO eskaini? - ZER eskaini? – NOLA | Begoña Aristondo<br>eta<br>Olatz Urkiza |

| | | |
|---|---|---|
| | eskaini? – NORK eskaini? - NORTZUEI eskaini? Diseinatu dezagun eta horretan hasi egingo gara. | |
| **3** | Kristau elkartea bizirik dago boluntarioei esker.<br><br>**Boluntarioak** eta euren partaidetza eta elkarlana begirunez zaindu behar dugu. Zer ospatu daukagunean ospakizun eta esker on aukerak sortu behar ditugu.<br><br>Boluntario mugimenduak ez du karga izan behar egitekoak eta ardurak konpartitzen baditugu elkarrekin.<br><br>Urtero aztertu behar dugu nola doan boluntarioen presentzia Arratiako Kristau Elkartean: egitekoen banaketa; lan banaketen oreka; altak/bajak; esker-ona; etab. | Itziar …<br>eta<br>Jose Mari Kortazar |
| **4** | **Caritas**: dagokion diskrezioz egin egitekoa, baina egindakoaren berri gizarteratu.<br><br>Kristauok bideratzen dugun laguntza azaldu egin behar dugu, gure nortasunarekin bat datorrelako hori kristauon egitekoa dela eta horretaz dagokion gardentasuna izan (urtean behin / kolekta egiten denean…)<br><br>Arratia mailan laguntza eskaintzen duten beste erakundeak ezagutu, harremana normaldu eta prest izan kolaborazio horren berri emateko. | Maribel Salcedo |
| **5** | Lehen fasean ez gara honekin hasiko. Baina urte bete edo bi urte barru…, ahal badugu…<br><br>Kristauok formazioa behar dugu, boluntarioen artean kristau talde formatuago batzuk lortzeko.<br><br>**Formazioak eta Biblia/Teologia** taldeek onura | |

| | | |
|---|---|---|
| | handia ekarriko lioke Arratiako Kristau Elkarteari epe ertain eta luzera.<br><br>Arduradun bat beharko genuke lehentasun honetaz gure arteko beharrak aztertzeko pausu berriak ematen hasi gaitezen.<br><br>(oraindik aukeratu gabe) | |
| **6** | Aurreko 4-5 lehentasunen dinamizazioa eta Arratiako eliza mailan (Parrokia kontseilua?) jarraipena egitea eta laguntzea.<br><br>Urteko jarraipen batzarren egutegia egin: helburua bideratzeko zein da gure enfokea – zein da lan plana eta nola ari gara burutzen – zeintzu dira arrakastarako faktoreak Lehentasun bakoitzak lan fitxa lagungarri bat? | Roberto Jauregibeitia<br>Jose Mari Kortazar |

# I. GURE INDARGUNE ETA HOBEKUNTZA ARLOAK

## III. A <u>Partaideek, gogoeta hasi aurretik, Elizarekiko dituzten kezka batzu agertu dituzte</u>.

- Alderatu/baztartu egin ditugu dibortziatuak eta homosexualak.
- Gure eliza oso sakramentalista da, eta horretan ahalbide asko ditu, ez ordea beste aspektu eta behar batzutarako. Elizkizunak ez dira egungo gizartera behar beste egokitzen. Elizaren gestu asko elizkizunen baitan gauzatzen dira eta horretara mugatzen dira.
- Elizak *berak irten behar du esparru publikora.*
- *Elizbarrutiaren beharrik ez da antzemanten. Tendentziak: Jesus bai – Eliza ez; Eliza ≠ Komunitate; Eliza = botere talde*

- *Familiaren sinodoa ospatu da eta Aita Santuaren gogoetak errezepzio arazoak izan ditu iritzi ezberdinak daudelako. Aita Santuaren erreforma keinutan bakarrik gera ote liteke? Sinodorako galdetegia osatu genuen, baina Elizbarrutiak ez du egindako bildumaren berririk pasa, ez dugu horretaz ezer jakin, ez dugu ezagutzen Bizkaiko elizaren iritzia.*

- Etorkinen errealitatea oso arazo grabea da, eta kezkagarriak izan dira Cañizares kardinalaren iritziak (Europa/musulmanak, etorkin guztiak ez jende garbia, etab.), nahiz eta gero barkamena eskatu duen.

Etorkinekiko kezka hau lau taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **9 puntu izan ditu: 3 + 3 + 2 + 1**.

- Kristauon formazioari buruzko kezka, *eritzi propioa izateko eta hierarkiaren eta hainbaten konportamentu eta adierazpenak baloratzeko norberak gaitasuna behar du.*

## III. B 2011-2015 planaz gogoeta.

Balorazio komentario batzu:

Talde lana egin dugu 2011-2015 urtealdi honetan.

Harro sentitzen gara horrela aritzeko aukera izan dugulako. Talde kohesioa daukagu; ez dago leku askotan holakorik eta.

Urtero egitekoaren jarraipena egin dugu, proiektu bakoitza bere fitxa propioz. *Markajea* sentitu dugu, egokia izan da eta lagundu egin digu.

Gorabeherak eta bajak egon dira, baita abadeen erreleboa ere; eta halere 6 lerroei eutsi egin diegu.

**2007-2011 urtealdia:** norbera bakarka zebilen, horrelakoa zen gure aurreko lan estiloa.

**2011-2015 urtealdian** gure arteko koordinazioa eta lotura handiagoa izan dugu. Helburu hurbilak jarri dira betetzeko, eta asko gainera bete egin dira. Gure ahulezia abade falta da.

### *Boluntarioak*

| | | |
|---|---|---|
| **2** | Arratiako elizako boluntarioen partaidetza eta berriztatzea diseinatu eta garatu.<br><br>Horretarako Arratiako elizaren batzorde eta beharren mapa egin, boluntarioen perfil egokiak identifikatu eta pausuak ematen hasi.<br><br>Berritze prozesuan fin jokatu partaidetza lortuz eta pertsonen momentuak errespetatuz: txandak batzuk besteei ematen jakin.<br><br>Harremanak sendotu boluntarioen artean (ospakizunak eta afariak). | Itziar Etxebarria |

Egiteko honen koordinatzaileak, aurrera begira, talde bat sortu behar zela komentatu zuen, horren falta izanez gero bakar samar sentitzen dela, eta horixe gertatu zaiola. Halere, esperientzia oso aberasgarria izan duela komentatu du.

- Boluntarioen azterketa eginda dago. Bataz beste 250 bolondresetik gorak hartzen dute parte Arratiako Eliz Elkartean. Boluntario gazteak falta dira, eta horretan datza egungo ahuleziarik handiena.
- Boluntario berriak behar ditugu, 18-30 adin artekoak. Hau da gure boluntarioak gaztetzeko plataforma.
- Jubilazio garaian esaterako, boluntario kideei errekonozimendua ematen hasiak gara. Beste errekonozimendu inportante bat jendea bakarka hurreratzen zaigunean izaten da, esker ona adierazten digutenean.
- Familia katekesia bide egokia litzateke boluntario berriak bilatzeko. Familia nukleo bera zaindu behar dugu eta guraso gazte horiekin harremana egin, zaindu eta inplikatu. Familia katekesia birplanteatu behar dugu; gazteengandik erlijio ikaslea hurbilago dago katekista edo abadea baino.

Boluntarioak beti dira beharrezko. Sei taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **10 puntu izan ditu: 3 + 2 + 2 + 1 + 1 + 1**.

## *Familia mezak, pastoraltza*

| | | |
|---|---|---|
| **3** | Familia mezak bultzatu. Ospakizunak prestaketa prozesu baten emaitzak izan daitezela.<br><br>Horretarako Arratia mailan oso modu egokian egiten diren familia mezen esperientzia onenak aztertu eta hortik ikasi beste elizetan aplikatzeko.<br><br>Guzti hau familia pastoraltzaren baitan diseinatu eta garatu. | Bego Aristondo |

Egiteko honen koordinatzaileak ondo sentitu dela aipatu du, baina ez ulertua ere sentitu dela adierazi du. Taldekide batek bere esker ona agertarazten dio batzarrean. Leku bakoitzeko esperientziak desberdinak dira eta egoera banan aztertzea komeni da.

- Familia meza arrakasta haundikoa (Igorre, Zeanuri,…). Jende asko dator, bestelako jendea ere. Diman haur gitxi eta Areatzan behartuta. Herrian katekista finkoak egon/ez egon oso desberdina da, gero mezen ospakizunerako. Katekistek lan handia egiten dute, gutxi batzuk asko inplikatzen dira. Darabilgun materiala oso ona da, eta irakurri eta erabiliz gero aurrepausu handia eman genezake.
- Ospatzaileei asko gustatu zaigu eta laguntza bikaina da. Familia meza aurretiaz familia katekesian tratatu izana azierto ona da. Familia mezetan protagonistak gurasoak direla; halere haurrentzako meza luzeegiak dira eta erakargarriago egin behar litzateke.
- Umeek parte hartzeko era bakarra da. Meza dagoela komentatu egiten da, oso positiboa da.
- Haurrek ez dute kristau/otoitz girorik bizi etxean. Sakramentu eskabideak (bataioak, ezkontza…) gutxira doaz.
- Familia katekesian sustraitzen da eta hor ahulezia batzu baditu. “Jesusen taldeak” metodoa eskaini genezake 40 urteko familiei.
- Erreferentzi modura, San Franziskitokoa (Santutxu) aztertu genezake; oso ondo prestatuta dago.

Familia meza eta familia pastoraltza. Hamar Taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **23 puntu izan ditu: 3 + 3 + 3 + 3 + 3 + 2 + 2 + 2 + 1 + 1**.

## *ADAP*

| | | |
|---|---|---|
| **5** | ADAP beharretarako planifikazioa egin hurrengo urteei begira, baita ere erizpideak finkatu ADAPen kontsolidazioa modu proaktiboan bideratzeko.<br><br>Enfokea modu positiboan landu, ez abade faltagatik, laikoen eklesiologia ikuspegitik baizik.<br><br>ADAP taldearen profila landu; baita formazio teologikoa eta komunikazio/dinamizazio abilitateak. | Irene Uriarte |

Egiteko honen koordinatzaileak ondo sentitu dela aipatu du eta herrietatik erantzun ona jaso izan duela. Bataz beste 30 bat boluntariok osatzen dute, bultzada handiena laugarren urtean izan da. Proportzioa, bataz beste, 3 meza abadeak emanda eta elizkizun Adap bat izango da.

- Ospatzaileek materiala oso ona eta sasoiz jasotzen dute. Eta duten formazioa ere oso ona da.
- Boluntarioak parrokia guztietan eta ekilibratuta. Hitzaldiak onak dira / Arratiako errealitatera egokituak. Kristau elkartea pozik dago. ADAPek aire freskoa ekarri du eta jende koherentearen bisibilitatea eman.
- 2 Ikuspegi sumatzen dira batzarrean: batzuentzat ardura honek laikoen eragina ahalbideratzen duela eta aurrerakoia dela laikoen bisibilitatea handitu eta komunitate estilo berriak abian jartzeko; hau ukatu gabe, beste batzuentzat abadearen mezak balio berezia duela aipatzen da, konsagrazioa abadeak bakarrik egin bait lezake.

Adap sendotuta dagoela aipatu da. Bi taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **3 puntu izan ditu: 2 + 1**.

***Caritas***

| | | |
|---|---|---|
| **6** | Caritas solidarioa. Krisialdi honetan ukituak izango diren arratiar zein etorkinei erantzuteko gai izan, behar beste boluntario eta errekurtsuak lortuz.<br><br>Diru iturri berriak bilatu, beharren mailaraino hurbiltzeko.<br><br>Arratiako egoera aurreikusi eta informazioa zabaldu dagokion tokietan solidaritate sena suspertzeko. | Imanol |

Egiteko honen koordinatzailea hil egin zen. Ordezkoa jarri da (gaurko saioan ezin egon izan dena).

- Mankomunitate zerbitzu sozialekin harremana izaten dugu. Arratia bertako jendea ere beharrizanean dago, eta uste ez dugun jendea gerturatzen zaigu. Egiten dena nahiko isilean kudeatzen da.

- Caritas inguruan informaziorik ez da ezagutzen ez elizan ez herrian: *"zenbat eta ezkutuago, akaso hobeto*? Gurutze Gorriak egiten duena zabaldu egiten da eta ondo ikusten da gainera; Caritas-ek komunikazioa eman behar du eta horretan zer irabazi dauka. Herrietako udal pantailetan Caritasen barriak ere eskaini daitezke eta Elizan kanpaina egiten den bakoitzean aurrekoetan jaso eta izandako diru laguntzaren eraginez egindakoaz informatzea ondo ikusten dugu. Esandakoaz aparte ere aipatu da topiko asko apurtu beharrean gaudela, esaterako **RGI**-ren diruak etorkinentzat direla eta bestelakorik...

- Caritasen laguntza eske datorrenari inplikazioa eskatzen zaio.

- 5 dinamika baloratu dira:
    - I. Harrera (herri bakoitzean ordezkari bana).
    - II. Sentsibilizazioa (kolektak 4/urtean) "pobreziaren kontrako astea" kanpaina.
    - III. Bidezko merkataritza (*Comercio justo)*.
    - IV. Sukaldaritza kurtsoa.
    - V. Osasun pastoraltza Dimako zahar-etxean eta baserrietan.

- Elizbarrutiko Caritas: Elizbarrutitik zentralizatuta (*azpikontrata* baten modura). Arratian boluntarioak eta dirua baino ez da eskatzen, erabakiak kanpotik datoz.

Caritasekin aurrera segitu eta pausu berriak eman behar direla aipatu da. Sei taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **9 puntu izan ditu: 2 + 2 + 2 + 1 + 1 + 1.**

***Elizaren bisibilitateaz***

| | | |
|---|---|---|
| **1** | Arratiako gizartean Elizaren bisibilitatea handitu, bertako entitateekin harreman berriak sortu eta sendotu.<br><br>Kolaborazio lanetan konplizitate bideak aurkitu eta bideratu, eliza eta gizartearen artean harreman urrats berriak lortuz.<br><br>Helburu hau gauzatzeko plan bat egin. | Joxe Mari Kortazar |

Egiteko honen koordinatzaileak komodo sentitu dela aipatu du, ekintza batzuk egin direla. Halere Elizaren aldeko jarrera positiboa landu behar dela dio; pertsona-klabe batzuengandik hoztasuna nabari da oraindik, beste batzuengandik jarrera ona jasotzen da.

- Ekintzak egin dira: esku-paperak, bloga, egutegia, etab. Balorazio ona izan du bereziko blogak, barne komunikaziorako baliabide modura.

- Kanpokaldeko ekitaldiak ere egin dira; Urkiolako errogatiba indartu da.

- Erronka, saitzeko: “Begitu” hamabostekaria beti agertzen da oso “folkloriko”, baina barri batzuk hasi dira agertzen.

- Elizaren bisibilitatea gaixoekiko: pertsonak gaixorik direnean hurbiltzen da eliza beraiengana? Zaharretxe pribatura ez gara agertzen.

- Ziortzako ibilaldiaren falta nabari da bake prozesua bideratu denean. Elizak objektiboa berriztatu beharko luke; izandako bake prozesutik beste sentsibilizazio prozesutara pasa beharko genuke.

Kristau elkarteak ez du lehenetsi proiektu hau; halere egiteko batzu agertu dira. Bozkatu denean **ez du punturik jaso.**

## *Ekonomiaz*

| | | |
|---|---|---|
| **4** | Ekonomia batzordea bideratu finantzen beharrak modu egokian aztertu eta ziurtatzeko.<br><br>Arratiako elizaren errekurtso ekonomikoak kudeatu, gastu/ingresuen kontabilitatea egin. Informatu. | Esteban Orbe |

Egiteko honen koordinatzailea hil egin zen. Roberto Jauregibeitiak eskaini ditu datu batzu, ordezkari gisa.

- Herriz herri badaude arduradunak. 2014an bilera bi egin ziran, baina periodizitate bat finkatu eta horren arabera elkartu beharko ginateke.
- Sobreak (donazioak) familia kuota lez mantentzen dira. Informazioa ematen da parrokia gehienetan. Ekonomikoki ondo gabiltza, behar bereziak daudenean plan berezia egin behar izaten dugu horretarako oso justu gabiz eta.
- Mezak ez dira herri guztietan berdin ordaintzen: 8/10 euro tartean dago eta ez herri guztietan irizpide berdinaz.

## III. C 2016-2019 planaz gogoeta berriak.

### Gazteak

- Gazteen arloa inportantea da. Zer jartzen dugu jaunartze ondorengo saio horretan? Jaunartze ondoren inolaz ere etenik ez litzateke egon behar baina egon dago. Gazteengana joan egin behar dugu. Gai erakargarriak erabili behar ditugu, eta ez baztertu, dinamika ondo badaramagu, eskaut taldea sortzea ere.
- "Astigintza" eskaut taldea egon zan, 18-25 adinekoak ziren monitoreak. Izandako esperientzia da (historia).

- Oso eliza sakramentala daukagu. Familiaren fede giroak eragin handia dauka. Guraso eta helduentzako katekesian ez dogu beti asmatu.

- Kristauok ez dugu ezkutatu behar gure aktibismoa kristau moduan.

- Begiratu beharko genuke besteek zer egiten duten: Arrigorriaga, Santutxu eta abar kasu oso interesgarriak dira guretzat.

Gazteen erronka gogoz eutsi behar dela aipatu da, familia pastoralgintzarekin harreman estua izanez. Bozkatuena izan da. Hamabi Taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **29 puntu izan ditu: 3 + 3 + 3 + 3 + 3 + 3 + 3 + 3 + 2 + 1 + 1 + 1**.

## Emakumeak

Emakumeari esker beste eliza bat egin dezakegu: toleranteago, anitza, hizkera matxista baztertuz. Pagolaren "JESUSEN TALDEAK" formazio aukera legez baliagarri litzaiguke, abiapuntu modura.

Emakumeak – teologia/praktika berria, erronka modura zain daukagu. Hiru taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **6 puntu izan ditu: 3 + 2 + 1**.

## Etorkinak

Giza talde berriak gure artean dauzkagu: latinoamerikarrak, Indiakoak. Baita ere identitate berriak, horien artean homosexualak.

Aipatu da ere erderazko mezea kenduta kanpotarren eliz taldea galtzen dugula. Aipatu da ez dela inoiz egon erderaz mezarik, beti elebidunak izan direla.

Etorkinak eta identite berrien gizartea erronka modura zain daukagu. Lau taldekidek Kristau elkartean lehenetsi beharreko proiektua dela aipatu dute. Bozkatu denean **4 puntu izan ditu: 2 + 2 + 1 + 1**.